# aurkibidea

# u r t a r r i l a
# otsaila

2014. urtea pozez eta ilusioz hasi genuen. Urtarrilaren 11an ospatutako manifestazioa Bilbon inoiz ikusitako manifestaldirik jendetsuena izan zen eta oztopo guztiak gainditu zituen. Guretzat, euskal preso politikoen senide eta lagunontzat, zeresan berezia duen eguna da larunbat hori. Besteak beste, kaleak hartu eta, gure lagun eta senideekin ditugun bisitak egiteari uko egiten diogulako. Euskal gizartearekin urtero dugun zita da, gizartearekin, hain zuzen ere, gobernuek behin eta berriz urratzen dituzten eskubideak aldarrikatzeko unea.

Manifestaldia ospatzeko bi egun besterik falta ez zirela, 8 abokatu eta preso ohi atxilotu eta espetxeratu egin zituzten. Mehatxua, kriminalizazio saiakera, gainera, zabalagoa izan zen. Polizi operazio berdinean Etxerat eta Jaiki Hadi jarri baitziren jomugan. Egun bat geroago, Barne Ministeritzak, hamar urtez ospatu den manifestaldia debekatu zuen.

**514**

Bi urte igaro dira, dagoeneko, ETAk su etena iragarri zuenetik. Ordutik, bakea, bakegintza eta normalizazioaren aldeko lanak biderkatu egin dira baina lan guzti horiek ez dute oraindik errealitate bihurtzeko biderik aurkitu. Ez da Etxerat-en lana Madril eta Pariseko Gobernuen bakearen kontrako jarreren inguruko hausnarketa plazaratzea. Bai ostera jarrera horien ondorio lazgarrien salaketa egitea:

Alde batetik, preso eta iheslarien eskubideen aldeko lana behin eta berriz kriminalizatzen saiatu dira, gizartearen aldarrikapen hau ixilarazi eta desagerrarazten saiatu direlarik. Argi dagoena da, eskubideak urratzen jarraitzen duten bitartean, gizartearen aldarrikapen izaten jarraituko dutela. Bestetik, preso eta iheslari politikoen senide eta lagunok pairatzen dugun biolentzia bere baitan jarraitzen du. Espetxe Politikak  datu anker bezain gordinak utzi dizkigu azken urte honetan; 10 hilabetetan, 3 dira hil diren euskal peso politikoak.

Urtarrila atxiloketa eta debekuek markatu bazuten, otsaila, Arkaitz Bellonen heriotzak beltzez tintatu du. 13 urte egoerarik okerrenetan igaro ostean,

hilabete gutxi batzuk besterik ez zitzaizkion falta askatasuna berreskuratzeko. Atxiloketan torturak pairatu zituen eta, horretaz gain, 13 urte horietan, jipoiak, era guztietako gehigikeriak eta salbuespeneko espetxe politika pairatu ditu. Muturreko egoerek, muturreko egoera bat bultzatu dute Xabier Lopez Peña edo Anjel Figeroaren kasuetan bezala.

Hala ere, agerian geratu da gizartearen gehiengoak egoera hau gainditzeko apustu irmoa egiten duela. Bake Prozesua sustatu eta indartu nahi du gizartearen gehiengoak. Horrela, Giza Eskubideen errespetua eta salbuespeneko espetxe politikaren amaiera halabeharrezko pausua dira bide honetan.

Gizartearen sostenguarekin, eta testigantza eta salaketan jarraitzeko mugarria izan da Etxeratek, otsailaren 16an Tolosan ospatu zuen XIII. Batzar Nazionala. Elkartea indarberrituta atera da batzarretik, mehatxu eta nekeei aurre egiteko prest. Indar berri hauekin dispertsioarekin amaitzeko lanari ekingo diogu. Gure senide eta lagunak, zenbat eta lehenago, lehenbizi Euskal Herrira eta etxera gero ekartzeko.

**ETXEAN NAHI DITUGU!**

# sakabanaketa

## 514 euskal preso politiko 79 espetxetan sakabanatuta

- **389** preso espainiar estatuko 46 espetxetan sakabanatuta
- **110** preso frantziar estatuako 27 espetxetan sakabanatuta
- **4** preso Euskal Herriko 3 espetxetan
- **1** Ingalaterrako espetxe batean
- **1** Portugalgo espetxe batean
- **1** Sei Kondarrietako (Ipar Irlanda) espetxe batean
- **8** preso espetxeratze arinduan, pairatzen dituzten gaixotasunak direla eta

- **68** euskal preso Euskal Herritik **1000 eta 1100** kilometrotara dauden espetxeetan
- **142** euskal preso Euskal Herritik **800 eta 1000** kilometrotara dauden espetxeetan
- **94** euskal preso Euskal Herritik **600 eta 800** kilometrotara dauden espetxeetan
- **123** euskal preso Euskal Herritik **400 eta 600** kilometrotara dauden espetxeetan
- **71** euskal preso Euskal Herritik **400** kilometrotara dauden espetxeetan
- **3** euskal preso Euskal Herritik urrun dauden 3 herrialdetako espetxeetan

# heriotzak kartzeletan

## Arkaitz Bellon : ekidin zitekeen heriotza

Arkaitz Bellon Blancoren heriotzak saminez bete gaitu. Urtea hasteko erarik anker eta gogorrena izan da hau. Horregatik, eta familia zein lagunei gure elkartasuna adierazteko, euskal herriari igorri zioten gutuna Hilabetekari berezi honetan oso-osorik argitaratu nahi izan dugu.



***ARKAITZEN SENIDE ETA LAGUNEK EUSKAL HERRIARI***

Otsailaren 5ean jaso genuen Arkaitzen heriotzaren berri. Orduan, gure bihotzek, berarenarekin batera “krak” egin zuten. Geroztik, gauza asko esan eta idatzi dira eta Arkaitz maite genuenok badugu zenbait argipen emateaz gainera, adierazteko beharra.

Mediku txostenek, momentuz, diotenaren arabera, bapateko heriotza naturala, izan da Arkaitzena. Azken unean, ia konturatu gabe, sufrimendu keinurik gabe hil dela onar genezake agian, baina ez bapateko heriotza izan denik, 13 urte luze hauetan erahil baitute krudelkeria neurtu eta sistematizatu baten bitartez. Arkaitzen espetxealdia ezagututa aldiz, nola onartu bere heriotza naturala dela?

Duela 13 urte ta erdi Arkaitz atxilotu eta torturatu egin zuten. Handik 3 urtera, epaiketan, fiskalak berak froga zuzenik ez zela aitortu arren, kondenatu egin zuten Andoni eta Txominekin batera, leporatzen zizkioten ekintzekin inongo proportziorik ez zuen kondena luze eta neurrigabeko batera. Askatasuna, Arkaitzek beste, inork gutxik maite badezake ere, gu baino hobeto eta azkarrago egokitu zen egoera berrira. Orduan, hasi ginen ulertzen urruntzearen eta dispertsioaren benetako esanahia: Valdemoro, Ocaña, Herrera de la Mancha, Algeciras, Puerto… Gero eta urrutirago beti. Urte bakoitzean 100.000 km inguru egin ditugu astean 40 minutuz ikusi ahal izateko. Ezagutu dugu espetxe aldaketa bakoitzean, hainbat egunetan, non daukaten ere ez jakiteak sortzen duen ezinegona.

Ezin dugu imajinatu, hala ere, berak, nola bizi izan duen, gurasoak bera bisitatzera joan eta errepidean istripu larri bat izan dutela jakitea. Ezin dugu irudikatu, sentitu duen amorrua, mina eta ezina  gartzeleroek,  jipoitu ondoren, eskuburdinekin, biluzik, egun oso bat ohera lotuta utzi dutenean. Arkaitzekin ikasi dugu, es-

petxe barruan ere, badirela espetxe gehiago, bere gartzelaldiaren zati handi bat isolatuta egin baitu, inongo kideren babesik eta laguntasunik gabe.

Ezagutu dugu zer den, bera bisitatzeko 1000 kilometro egin eta edozein aitzakiarekin bisita ukatu eta elkar ikusi gabe itzultzea. Eta gogorra, jasangaitza egiten zaigu hori guztia eta gehiago,berak bakar bakarrik irentsi duela jakitea. Izan ere, jipoia edo beste edozer izanda ere, bisitan, gure aurrean, beti agertzen zitzaigun indartsu, beti aterarazten zigun irribarrea. Horrelakoxea zen Arkaitz, gogorra baina xumea. Ez gintuen larritu nahi, ez zuen gure bihotza mindu nahi.

Guk badakigu horrek denak hil duela Arkaitz; Arkaitz ez da joan, kendu egin digute. Gartzela politika hiltzaile baten ondorio zuzena izan da gertatu dena, ez “edozeini gerta dakiokeen zerbait”. Kasualitatea baino kausalitatea izan da. Zer gertatuko zaio ba lore bati, lurra, ura eta argia kentzen badizkiote?

Horrelakoetan, hitzak sobera omen daude, baina guri, hitzak falta zaizkigu, egun mingarri hauetan sentitu dugun babesa eta maitasuna eskertzeko. Gertukoengandik hasi eta ezagutzen ez genuen jendearengandik ere bai, itzelezko berotasuna jaso dugu. Gure samina leuntzen lagundu diguzue. Egun hauetan, Arkaitzek hainbeste maite zuen herriak, bera ikaragarri maite zuela sentitu dugu.

Mina, amorrua eta pena sentitu dugu baina baita harrotasuna ere, harro gaude Arkaitzekin eta baita Euskal Herriarekin ere. Arkaitz, Euskal Herriarena ere bada.




Eskerrikasko guztioi, bihotzez, bisitetan eta bidaietan ezagutu eta lagundu diguzuen guztioi, egunerokoan laguntza eskaini diguzuen guztioi, hor egon nahi eta ezin izan duzuenoi, egoera hau iraultzeko zuen ekarpena egin duzuen guztioi…lepoan hartu ta segi aurrera!!

Bukatu aurretik, egun hauetan hedatu den informazio bat gezurtatu beharrean aurkitzen gara. Esan izan denare n kontra, Arkaitzen bikotekidea ez dago haurdun.

Azkenik, besarkadarik sentituena bidali nahi diegu Arkaitzek espetxean utzi dituen lagun eta kide guztiei. Badakigu zuek ere une latzak bizitzen ari zaretela eta jakizue zuekin gaudela.

Eskerrik asko.

# osasun eskubidea

Arkaitz Bellon Blancoren heriotzak euskal preso politikoek momenturo pairatzen duten tentsioa mahaigaineratu du. Espetxeak tentsioa du adierazle nagusien artean. Tentsioa hau du hizpide Jaiki Hadi elkarteak Osasunaren inguruan prestatuko "Kartzela eta Osasuna" dossierrak. Hori dela eta, Hilabetekari berezi honetara lan horretako zenbait kontzeptu ekarri ditugu, egoera hau era egokian testuinguratu eta salatzeko.

10

*"Kolektibo honi aplikatzen zaion espetxe politikak baditu beste osagarri batzuk zuzen eragiten dutenak osasun alorrean, patogenikoa bilakatu arteraino. Horrela, pertsona hauek espetxe politika bereizituaren ondorioz espetxean bizi ohi duten etengabeko tentsioak ez du batere laguntzen maila honetan. Neurri bereziak ezartzen zaizkie preso hauei, unean uneko giro politiko edo sozialarekin lotuak, eta horrek sufrimendu maila areagotzen du haiengan. Preso hauei ezartzen zaien bizitza erregimenak espazioa eta denboraren arloko aldaketa ugari ekartzen du askotan. Maiztasunezko espetxe edo ziega aldaketak, bizi baldintzen etengabeko aldaketak, gaueko kontaketak, etengabeko miaketak, zeremonia iraingarri eta umiliagarriak (miaketetan bai presoa bai senidea biluztu beharra, kontaketetan tente egon beharra, ...), leihoetako metalezko xafla zulatuak, etab., honek guztiak, jakina, eragin zuzena du pertsona hauengan. Eta zer esanik ez gaixo egonik neurri berezi horiek (kontrol itogarria, lekualdaketa etengabeak, bakartze sistematikoa, haien aurkako mehatxu eta oldartze sistematizatua, ...) jasan behar dituztenean.*

*Bakartze edo isolamenduaren aplikazio zorrotza da kolektibo honen beste bereizgarri bat. Isolamendua edo bakartzea egoera oso zehatzetara zuzendutako neurria bada ere, espetxe arautegian (zigor puntual gisako neurritzat hartzen dena), kolektibo honen kasuan ohiko edota behin-betiko neurri gisa aplikatzen da. Izan ere, preso hauek ez dute zertan espetxe arautegia puskatu beharrik zigor mota hau jasotzeko. Are gehiago, ohikoa bilakatu da pertsona hauek bata besteengandik bakartzea bai espetxe zein modulutan.*

*"Goiko aginduak" edota "segurtasun arrazoiak" izaten dira aipatzen diren aitzakiak. Jakina, ezaguna da bakartze luzeak zelako eragina duen pert-*

*sonarengan eta are gehiago kasu hauetan, non bakartzea aste, hilabete edo urteetan luzatzen den. Osasungintzari dagokionez, berriz, maiz suertatzen da presoak nahita-nahiez isolamendura eramatea (zigorren bat betetzeko, erregimen arazoengatik...). Baina badira presoak zeinentzat bereziki kaltegarria izaten den egoera honetan egotea: osasun mentalaren arrazoiarengatik, klaustrofobiarengatik... eta kasu hauetan ere maiz suertatzen dira arazoak: "goiko aginduak" eta "segurtasun arrazoiak" erabiltzen dira aitzakia gisa pertsona hauek bakartzeko. Aipatu beharra dago kasu hauetan espetxeko sendagile eta psikologoek ahalmena dutela bakartze kasu hauek eragozteko, baina gehienetan men egiten diotela espetxeko agintaritzari.*

*Isolamendua pertsonaren nortasuna ezabatzeko eta menperatzeko mekanismo gisa erabiltzen du espetxe instituzioak. Bakardade eta bizitza antsietate sentimendu sakona bultzatzen du, erreferentzia-puntuak desagertzen baitira; ezin ditu gertakizunak aurreikusi (gatazkak, murrizketak, aginduak, ...) edo saihestu (monotonia, ordutegia edo espazioak)".*

Jaiki Hadi Elkartea. Kartzela eta Osasuna dosierra (2013 - 04)

## Ibon Fernandez Iradi-ren egoera




Otsailaren 13an, Ibon Fernandez Iradi euskal preso politikoaren abokatuak, medikuak eta senideek prentsaurreko bat eman zuten Baionan. Lannemezaneko espetxean dagoen eta esklerosis anikoitza daukan preso honen egoera hain larria denez, frantses legeak permititzen duen bezala bere abokatuek kondenaren etena eskatu zuten. Prozedura honen harira, administrazioak izendatu bi medikuek egoera hori presondegiarekin ez dela bateragarria esan zuten haien informetan, azkena otsailan. Datozen asteetan, komisio batek Ibon-en askatzea edo presondegian mantentzea erabaki beharko du.

Bere berehalako askatzea eskatzeko, kanpaina bat eramaten ari da, besteen artean mediku eremuan, nun Ibon-en sustenguzko testuak jadanik 100 sinadura baino gehiago bildu ditu.

# salbuespen neurriak

## bizi osorako espetxe zigorra

Frantziar estatuan, bizi osorako espetxe zigorrari dagokionez, ez da urte kopuru maximorik, Europako beste estatuetan bezala. Biziarteko zigorrera ("perpétuité" deitzen duten neurria) kondenatua den preso batek baldintzapeko askatasuna eska dezake 15 urteren buruan (edo "segurtasun kondena" bete ondoan, kondenari neurri hau gehitzen bazaio), baina, erabakia Kondenen Aplikapenen Epailearen esku da, eta honek etengabe uka dezake. Preso sozial batzuek kasik 50 urte pasa dituzte Frantziako kartzeletan.

Euskal preso politikoen artean, 4 neurri honen pean aurkitzen dira gaur egun: 24garren urtea betetzen ari diren **Jakes Esnal, Frederik Haranburu** eta **Ion Kepa Parot**, eta 2013an kondenatu duten **Mikel Karrera**. Beste hainbat euskal presori bizi arteko zigorra eman diete "de facto" oso kondena luzeekin edota kondena ezberdinak akumulatuz.

Espainiar estatuari dagokionez, bizi osorako zigorra ahalbidetzen zuen 197/2006 doktrina indargabetu ostean, gogoratu behar da, gure senide eta lagun ugari 40 urteko espetxe zigorra betetzera zigortu dituzte. Hau da, bizi osorako espetxe zigorrak aplikatzen diete.

# espetxeetan

## eskubide urraketak

## bestelako gertakariak

### isolamendua

Bakartze edo isolamenduaren aplikazio zorrotza euskal preso politikoen bereizgarri bat da. Isolamendua edo bakartzea egoera oso zehatzetara zuzendutako neurria bada ere, espetxe arautegian (zigor puntual gisako neurritzat hartzen dena), gure senide eta lagunen kasuan ohiko edota behin-betiko neurri gisa aplikatzen da. Esan bezala, euskal presoen kasuan isolamendua edo mitarda maiz ezartzen den zigor bat da. Baina zenbait kasutan presoak agian isolamenduko moduluan egon ez arren bakarrik egoten dira, hau da, beste kiderik edo euskal preso politikorik gabe egoten dira, eta kasu hauetan bakartuak daudela esaten da. Hona hemen momentu honetan espetxeetan bakarturik dauden preso politikoen zerrenda:

| | | |
|---|---|---|
| **Euskal Herria** | Zaballa | Txus Martin |
| | Basauri | Aitzol Gogorza |
| **Espainiar estatua** | Alacala | Jose Campo |
| | Almeria | Iratxe Yañez |
| | Bonxe | Josu Amantes |
| | Castello I | Marta Igarriz |
| | Estremera | Arantza Zulueta |
| | Mansilla | Olga Comes |
| | Murcia II | Oihana Mardaras |
| | Puerto III | Irantzu Gallastegi |
| | Segovia | Jon Enparantza |
| | Valdemoro | Unai Ruiz Pou |
| | Valladolid | Miren Zabaleta |
| **Frantziar estatua** | Tarascon | Alex Akarregi |
| | Bourg-en-Bresse | Ander Mujika |
| | Joux-la-Ville | Julen Eizagirre |
| | Moulins-Yzeure | Joseba Aranibar |
| **Portugal** | Monsanto | Andoni Zengotitabengoa |
| **Sei Konderriak** | Belfast | Fermin Vila |
| **Ingalaterra** | Long Lartin | Raul Fuentes |

## erasoa

**Pariseko «Palais de Justice» :** Urtarrilaren 8an Raul Aduna euskal preso politikoa bortizki erasotu zuten Pariseko Epaitegiaren kalabozoetan. Adunak ziega preso arrunt batekin partekatzeari uko egin zion eta, protesta egiteko modu pasibo gisa, lurrean eseri eta, funtzionarioen arduradunarengana eraman zezatela eskatu zien. Tentsio une horien ondorioz, Raul Adunak ez du erasoan gertatutakoa zehazki gogoratzen eta konortea galdu ote zuen ere ez daki ziur. Hala eta guztiz ere, hanka batetik helduta korridorean barrena arrastaka eraman zutela, paparretik helduta «panpin baten gisan» altxarazi zutela eta nola jakin gabe lurrean bukatu zuela gogoratzen du Adunak. Era berean, buruan eta atzealdean kolpeak ere jaso zituen. Funtzionarien arduraduna ziegara joan zitzaion ondoren, eta espetxezainak kolpatu izana egotzi zion preso gasteiztarrari. Disziplina batzordeak 20 egunez mitard-ean egoteko zigorra ezarri zioten, baina ez du bete beharko. Gertaera hauek «oso larriak» direla salatu zuen Etxeratek, agerian uzten baitu «presoek pairatu behar izaten duten tentsioa». Adunak kontatutakoa «tortura testigantzen antza» duela gaineratu zuen elkarteak.

## espetxeetako egoerak okerrera

**Granada eta Logroño :** Aurrez aurreko bisitetara ez diete ezer sartzen uzten; ez janaririk, ez eta haurrentzako jostailurik edo gauzarik ere.

**Bourg-en-Bresse :** Ander Mujika Andonegik 6 aste bete ditu mitard edo zigor zeldan Bourg-en-Bress espetxean. Anderrek bere bakartze egoera salatzeko protesta egitea erabaki zuen urtebete baino gehiago daramalako Bourg-en-Bresse espetxean bakartua. Kiderik ez izateaz gain, espetxe hau Euskal Herritik 900 kilometrotara dago. Azpimarratzen dugu mitard-ean egoteak presoen bizi baldintzak erabat okertzen ditu, muturrera eramanez eta, oinarrizko eskubideak ere, urratuz. Mitard-ean dauden bitartean, presoak isolatuak egoten dira beste kide edo pertsona ikusi barik, eguneko ordu gehienak zeldan egotera behartuta egoten direlarik. Trasladoa eskatuta badu ere, ez du oraindik erantzunik jaso. Anaia ere Frantzian preso egonik, biak espetxe berean edo gertuko espetxe batean beharko lukete.

**Fleury :** D2 dibisioko eukal preso politikoek, espetxeko patioan pilotan jokatzeko, ziegan jositako pilota batekin ibili dira azken boladan, patioaren

ertz batean, paretaren aurka inprobisatutako frontoian. Hilaren 16an, pilota, patioa inguratzen duen hesiaren bestaldera erori zitzaien. Hurrengo egunean, presoek, espetxean lanean ari zen langile bati, pilota pasatzeko eskatu zioten. Funtzionariek, kameretatik euskaldunek “objektu” bat jaso zutela ikustean espetxeko ERIS talde berezia deitu zuten. Ziegak eta presoak miatzeaz gain, euren liburu zein marrazkiak desagerrarazi zituzten, tentsioa areagotuz.

**Jaén :** Euria egiten duenean, ustez paretetatik ura sartzen zaie eta ziega guztia urez beteta izaten dute. Aitor Garcia presoa, esaterako, lo egiteko koltxoirik gabe dago; euria sartu eta koltxoia busti zitzaionez, lehortzen izan behar duelako.

**Liancourt :** Urtarrilaren 2an, Mikel Oroz presoak funtzionario baten erasoa jasan zuen etxera deitu ondoren patiora zihoala. Gertaera kamara batek grabatu bazuen ere, espetxeak kamara apurtuta dagoela argudiatu du. Funtzionarioa ezaguna da espetxean preso gehiagorekin liskarrak izan dituelako. Medikuak Mikel Oroz artatu zuen. Azterketaren emaitza: kontraktura lepoan eta traumatismoak besoetan eta sorbaldan. Ordutik, funtzionarioen tratua oso egokia izaten ari da.

**Puerto III :** Espetxeko demandaderoa kendu diete; hau da, zenbait produktu erosteko zuten aukera bakarra kendu diete, bereziki janaria : fruituak, esnekiak...

**Poitiers Vivonne :** Alaitz Aramendi eta Izaskun Lesaka presoak DPS (bereziki zaindutako presoa) moduan kalifikatu dituzte, eta duela hiru hilabete ingurutik gauero bi orduro kontrola egiten diete: tapakietatik begiratzen diete, argiak pizten dituzte, soinua ateratzen dute... Hau dela eta, bi presoek oso gau txarrak pasatzen zituzten, eurengan ondorio fisiko nahiz psikologikoak dituelarik. Presoak borrokan ari ziren eta zuzendariarekin adostasun batera iristeko helburua zuten arren, zuzendariak jarrera erabat itxia azaldu zuen. Otsailaren bukaeran, Euskal Herritik 1100 kilometrora dagoen Bapaume-ko espetxera Poitiers-en zeuden Alaitz Aramendi eta Oihana Garmendia (kondenatuak) traslađatu zituzten. Izaskun Lesakak, azken berrietan, egoera berberan segitzen du.

# komunikazio eta bisitak

**La Santé :** Raul Aduna presoa 2013ko maiatzean atxilotu bazuten ere, oraindik ez dizkiote lagunen bisitak onartu eta familiak egin behar izaten ditu bisita guztiak. Horrek familiarentzat dituen ondorio guztiak (ekonomikoa, fisikoa...).

**Rennes :** Lorentxa Guimon euskal presoari Urtarrilaren 23an hil zen Xabier Guimon bere aitaren ehorzketetara joateko baimena ukatu diote nahiz eta familia zeremonia atzeratu izatea Lorentxa etorrarazteko tramite guztiak egiteko denbora izan dezaten.

**Seysses :** Urtarrilan, Julen Mujika euskal presoaren senide batek bisita galdu egin du titipoltsa hiru alditan pitatu zitzaiolako arkuan pasatuz. Kentzea proposatu zuen, baina bortitzki erantzun zioten funtzionarioek. Kanpora bultzatu zuten eta bisitara sartzea debekatu zioten, berarekin etorri zen bere senarra bakarrik sartu behar izan zuen.

Otsailaren 6an, Seysseseko espetxean dagoen Ruben Riberorekin egotera sartu aurretik bere bikotekideak Arkaitz Bellonen heriotza salatzeko kartela eta presoen ikurra atera zituen portikotik pasatu aurretik. Bisitara sartu ahal izateko gainean zeramana eranstea onartu arren, bisita ukatu zioten eta gendarmeek bi orduz izan zuten Mureteko komisaldegian. Hurrengo egunean, bisitara agertu zenean, funtzionario batek esan zion aurreko egunean gertatutakoagatik ez zuela bisitak egiteko baimenik. Neskak ez zuen horren berri eta azalpenak eskatu zituenean espetxeko nagusi bat atera zen esateko orain presoaren epaileak erabaki behar zuela bisita baimenarekin zer egin eta bere bisita baimena momentuz suspenditu zegoela. Espetxeko nagusiarekin izandako elkarrizketa labur horren ondorioz, autoritatearen kontrako mehatxuen salaketa bat jaso zuen eta honen inguruan deklaratzeko Seysseseko komisaldegian 8 orduz atxilotuta egon ondoren martxoaren 21ean Toulousen epaitua izango dela jakinarazi zioten. Hilabeteko zigorra beteta, martxoaren 6tik aurrera berriro egin ahal izango ditu bisitak.

# senide eta lagunak

## sabanaketak eragindako istripua

Otsailaren 8ko asteburuan, Harriet Iragi eta Raul Alonso euskal preso politikoen hiru lagunek istripua ukan zuten Castellon II-ko espetxera joaten zirelarik, basurde bat atera zitzaienean kotxe aurrean. Kolpatuak izan ziren hirurak eta kalte handiak izan zituen kotxeak, baina bisita bururatzea lortu zuten.

# askatasunak

**Asier Larrinaga Rodriguez** (Bilbo - Alde Zaharra), 2014ko urtarrilan.
**Patxi Segurola** (Usurbil), urtarrilaren 9an. Segurola Frantzian preso egon ostean, aske geratu zen, baina, konfinatu egin zuten. 2013an Espainiara estraditatua izan zen.
**Xabier Urizar Murgoitio** (Arrasate), urtarrilaren 14an. 197/2006 doktrinaren indargabetzearen ostean eta 29 urte espetxean igarota.
**Carlos Saez de Egilaz** (Beasain), urtarrilaren 17an.
**Zaloa Zenarruzabeitia** (Markina), urtarrilaren 20an. 6 urteko zigorra beteta.
**Estebe Gandiaga** (Markina-Xemein), urtarrilaren 20an. 6 urteko zigorra beteta.
**Eneko Ostolaza** (Markina-Xemein), urtarrilaren 20an. 6 urteko zigorra beteta.
**Ion Iurrebaso** (Bilbo), urtarrilaren 24an.
**Xabier Balanzategi** (Bilbo), urtarrilaren 27an.

**Iñaki Lizundia Alvarez** (Trapaga), 2014ko otsailan.
**Patxi Gundin Maguregi** (Bilbo - Santutxu), otsailaren 1ean. Kondena betea.
**Estevez Paz Juan Carlos** (Donostia), otsailaren 4an. Kondena betea.
**Garikoitz Pascual Muneta** (Donostia), otsailaren 9an.
**Jon Beaskoa Rodriguez** (Bilbo - Alde Zaharra), otsailaren 11n.
**Iker Zubia Urrutia** (Gasteiz), otsailaren 11n. Kondena betea.
**Aratz Estonba Iturriza** (Donostia), otsailaren 11n. Kondena betea.
**Ainhoa Irastorza Otegi** (Ordizia), otsailaren 11n. Kondena betea.
**Julen Larrinaga Martin** (Bilbo - Urribari), otsailaren 12an. Kondena betea.
**Olatz Egiguren Enbeita** (Bilbo - Santutxu), otsailaren 15ean. Kondena betea.
**Maite Juarros Ruiz de Gordezuela** (Bilbo - Altamira), otsailaren 21ean. Kondena betea.
**Julen Eizagirre Uranga** (Zarautz), otsailaren 22an. Kondena betea.
**Gorka Zulaika Amutxastegi** (Lezo), otsailaren 28an. Kondena betea.

# espetxeratzeak

**Jon Enparantza** (Donostia), **Arantza Zulueta** (Lekeitio), **Aitziber Sagarminaga** (Bilbo), **Jose Campo** (Donostia), **Mikel Almandoz** (Burlata), **Asier Aranguren** (Iruñea), **Egoitz Lopez de la Calle** (Otxandio) **eta Aintzane Orkolaga** (Donostia), EPPK-ren bitartekarian urtarrilaren 8an atxilotu zituzten Bilbon. Bost egunen ostean, zortziak espetxeratu egin zituzten Enparantza eta Lopez de la Calle Navalcarneron, Aranguren eta Almandoz Aranjuezen, Sagarminaga eta Orkolaga Soto del Realen, Zulueta Estremeran eta Campo Alcala Mecon.
**Irati Mujika** (Amezketa), urtarrilaren 9an atxilotu zuten Aramaion eta Soto del Realen espetxeratu.
**Goizane Pinedo** (Gasteiz), urtarrilaren 18an Gasteizen atxilotu eta hasiera batean Zaballan espetxeratu arren, berehala Soto del Realen lekualdatu zuten.
**Unai Ruiz** (Gasteiz), urtarrilaren 18an Gasteizen atxilotu eta eta hasiera batean Zaballan espetxeratu arren, berehala Valdemorora lekualdatu zuten.
**Idoia Iragorri** (Sestao), urtarrilaren 25ean Sestaon atxilotu eta Soto del Realen espetxeratu zuten.

**Alberdi Uranga Itziar** (Durango), otsailaren 16an atxilotua Mexicon eta Soto del Real-en espetxeratua.
**Narvaez Goñi Juan Jesus** (Iruña), otsailaren 16an atxilotua Mexicon eta Soto del Real-en espetxeratua.

# leku aldatzeak

## destino aldaketa

ESPAINIAR ESTATUA

**Xabier Sagardoi** (Barañain), Iruñea-tik Soria-ra.
**Luis Goñi** (Barañain), Iruñea-tik Daroca-ra.
**Maialen Zuazo** (Bilbo), Brieva-tik Villena-ra.
**Patxi Segurola** (Usurbil), Soto del Real-etik Estremera-ra.
**Irati Mujika** (Amezketa), Martutene-tik Soto del Real-era.
**Sara Majarenas** (Donostia), Mansilla-tik Soto del Real-era.
**Juan Carlos Estevez** (Donostia), Valdemoro-tik Villena-ra.
**Ismael Berasategi** (Urretxu), Soto del Real-etik Villena-ra.
**Xabier Tximeno** (Donostia), Valdemoro-tik Villena-ra.
**Goizane Pinedo** (Gasteiz), Zaballa-tik Soto del Real-era.
**Unai Ruiz** (Gateiz), Zaballa-tik Valdemoro-ra.
**Julen Atxurra** (Lekeitio), Soto del Real-etik Puerto I-era.
**Juan Ramon Karasatorre** (Etxarri-Aranatz), Soto del Real-etik Castello II-ra.
**Lasagabaster Anza Olatz**, Brieva-tik Foncalent-era.
**Txokarro Zoko Jorge**, Caceres II--tik Foncalent-era.
**Fresnedo Gerrikabeitia Aitor**, Castello II-tik Jaen II-era.
**Aspiazu Rubina Garikoitz**, Estremera-tik la Santé-ra eta ondotik Arles-era.
**Enparantza Agirre Jon**, Navalcarnero-tik Segovia-ra.
**Vallejo Franco Iñigo**, Soto del Real-etik Sevilla II-ra.
**Mardaras Orueta Oihana**, Soto del Real-etik Murcia II-ra.
**Estevez Paz Juan Carlos**, Valdemoro-tik Villena-ra.

FRANTZIAR ESTATUA

**Carlos Saez de Egilaz** (Beasain), St Martin de Ré-tik Gradignan-era.
**Areitio Azpiri Alaitz, Fresnes-etik Rennes-era.**
**Aramendi Jaunarena Alaitz**, Poitiers-Vivonne-tik Bapaume-ra.
**Garmendia Marin Oihana**, Poitiers-Vivonne-tik Bapaume-ra.

## diligentziak

ESPAINIAR ESTATUA

Lurdes Txurruka (Soraluze), Huelva-tik Soto del Real-era.
Ana Belen Egues (Elduain), Algeciras-etik Soto del Real-era.
Olga Comes (Etxarri-Aranatz), Leon-etik Soto del Real-era.
Abaunza Martinez Javier, Moulins-Yzeure-tik Soto del Real-era.
Ayestaran Legorburu Jose Lorenzo, Nanterre-tik Soto del Real-era.
Martitegi Lizaso Jurdan, Nanterre-tik Soto del Real-era.
Rubenach Roiz Jon, St Martin de Ré-tik Soto del Real-era.

# hilabeteko gaia

## Portugalen preso dagoen Andoni Zengotitabengoaren bikote-laguna Iera Abadianori elkarrizketa

**Iera Abadiano, atxondoarra Andoni Zengotitabengoaren bikotea da. 2010 urtean atxilotu zuten Lisboan egun Portugalen preso jarraitzen duen elorrioarra. Ordutik, Lisboako segurtasun handiko espetxe batean jarraitzen dago preso. Segundoro bere eskubideak urratu eta umiliatzen dute. Besteak buzo marroi batekin jantzita joatera behartzen dute, Guantanamon bezala. Hilabete bereziki gogorra izan da otsaila. Arkaitz Bellon familiaren laguna zen. Andoni eta Arkaitz, elorrioarrak biak, auzi berean inputatuak egon ziren.**

**Andoni Zengotitabengoa 2010eko martxoaren 11n atxilotu zuten Lisboan. Nola bizi izan zenuen zure senidearen atxiloketa?**

Zure senidea edozein momentutan atxilotu dezaketela dakizunean beldurrarekin bizitzera ohitzen zara. Irratia eta azken orduko berriak zure egunerokotasunaren soinu banda bihurtzen dira. Baina, 2010ko martxoak 11ko egun luzearen ondoren irratia itzali eta atseden hartzeko beharra izan nuen, isiltasun eta intimitate apur baten bila-edo.



Ordu gutxi batzuk lo egin ondoren iritsi zen berria nire etxera, tinbre hots batekin. Telebista piztu nuen berehala, irudi baten bila.

Alabak esnatu eta ikastolara eraman bitartean, haginak estutu ondoren, egun guztia ezjakintasunean pasatu nuen. Ez nekien nora jo. Eta denbora pasatzen utzi genuen, ze erremedio! Andoni atxilotu eta hurrengo egunean etxera deitzeko aukera izan zuen. Deia sentimendu kontrajarrien artean egin genuen. Poza, tristura...

**Zein izan zen atxiloketa ondoreneko prozesua? Non espetxeratu zuten?**

Martxoaren 11ko arratsaldean atxilotu zuten eta martxoaren 12 iluntzean etxera deitu zuen Lisboako Monsanto espetxean zegoela esateko. Dei hark alde batetik lasaitu gintuen eta, egoera ezezagun horri aurre egiteko kemena eman zigun nolabait. Euskal herriko abokatuekin kontaktuan jarri ginen eta Portugaleko abokatu baten telefonoa eman zigun berarekin harremanetan jartzeko.

Martxoaren 13an espetxetik dei bat jaso genuen. Bertako langilea den gizarte laguntzaile bat zen, bisitako eguna eta ordua jarri zigun eta horrela martxoaren 16 Andoni ikusteko aukera izan genuen.

**Zuok, senide eta lagunok, nola bizi duzue egoera hau? Zeren zuei ere komunikazio eskubidea urratzen zaizue...**

Bai hala da, ez dute senide guztiak bisitatzeko aukera, soilik batzuk eta beraiek aukeratutakoak. Bisitak astean ordu bikoak izan daitezke baina kontuan izanik desplazamenduak suposatzen duen kostua ekonomikoa zein fisikoa ezinezkoak bihurtzen zaigu. Egoera hau hasiera batean gogorra egiten zitzaidan bere alde batera utziko bagenu bezala. Gogoratzen dut hasiera batean bisitako eguna eta ordua heltzen zenean, negar egiten nuela, bera isolamendu eta bakardade horretan ikusteak gainditzen ninduen. Egoera guztietara bezala ohitzea baino ez zaizu gelditzen, sumiso bihurtzea.

Gainera bizi dugun egoera latz honi gehitu beharra diogu, gure alabak bederatzi eta sei urte baino ez dituztenak, urtean behin izaten dutela kristalik gabeko bisita. Honek guztiak beraien garapen pertsonal, psikologiko eta emozionala oztopatzen duelarik. Ikaragarria da Haurren eskubideak deklarazioa sinatu zuen herrialde batek haurren eskubideei horrela muzin egitea.



***Andoniren eguneroko bizi-baldintzak gogorrak dira, berak horrela deskribatzen dizkigu.***

## PATIOA: egunean bi ordu

Hiru patio desberdin daude: patio arrunta, handia eta squash patioak. Astean 14 patio ordu,lau alditan patio arruntean, birritan handian eta squashekoan behin.

Patio arrunta 50 m²-ko kaiola bat da goiko aldean hesi bat duelarik. Gehienez, elkarrekin hiru pertsona irteten dira, inoiz ez dakielarik norekin elkartuko duten. Goitik bera miatu egiten dute ziegatik sartu eta irten aurretik, kontuan izanda ziegatik patiora bidea kartzeleroen begiradapean egiten duela. Hau guztia dela medio, sarritan nahiago izaten du ziegan bakarrik geratzea.

## BISITAK: mota desberdinetako bisitak daude

**Arruntak:** Astero bi, bakoitza ordu betekoa. Familiako kide batzuk bakarrik bisita dezakete. Nahiz eta legeak lagunekin bisitak onartzen dituen, zuzendariak ez ditu baimentzen. Presoa buzo marroi batekin joan behar da bisitara.

Bisita hauek 6m²-ko gela batean egiten dira. Beira lodi eta zikin batek banatzen duelarik. Gela banatzen duen beira horren azpian zulo antzeko zirrikitu batzuetatik hitz egin behar da, ez delarik gauza askorik entzuten.

Kristal eta komunikatzeko balio diguten zulo hauek lurretik 120 zentimetrotara daude. Kontuan izanik nire alaba txikiak 122 zentimetro neurtzen dituela, agerian gelditzen da ez dela kristal horretara heltzen, heldu baten laguntzarekin ez baldin bada. Beraz argi eta garbi gelditzen da ezin dugula elkar begiratu eta elkar komunikatu.



BISITA ARRUNTA
9 ETA 6 URTEKO ALABAK.
BESTE ALDEAN ANDONI.

**Bisita bereziak:** Bi ordutakoa da urtean behin egin dezakeguna, eta data berezi batekin justifikatu behar duguna: alaben urtebetetzea, Gabonak… Hiru senide sar daitezke bisitara. Ez da bis bat, abokatuen gelan egiten den bisita bat da bisita arrunta egiteko erabiltzen den leku zikin eta hotz berbera, baina aldaketa txiki batekin oraingoan beirak banatu beharren mahi luze batek banantzen gaitu. Gela honek ate bat du eta atea kristalezkoa da. Bisitak irauten duen denbora guztia kartzelero armatu bat zelatan ibiltzen da, bere begirada gure sorbalda gainetik izaten duelarik gu intimidatu nahian bisitan sor daitekeen, magia sapustuz.

